© Argitaraldi honena: Labayru Fundazioa - Gatikako udala
Egilea: Labayru Fundazioa

Labayru Fundazioa
Colon de Larreategi, 14-2. esk.
48001 Bilbao
Tel.: 94 443 76 84
labayru@labayru.eus
www.labayru.eus

Fotokonposizinoa: Idoia Tolosa. Labayru Fundazioa
Silutegia: Impresión Tecnigraf, S.L.L.

L.G.:
ISBN: 978-84-92599-83-7



Herritar maitea,

Eskuetan daukazun liburuxka honegaz Gatikako Udalak gure herriko baserriek daukien aparteko esangurea erakutsi gura izan dau. Baserriak dira gure kultur eta herri ondarearen altxorrik baliotsuena; izan be, bertan garatu da gure nortasuna eta eurotan gertatu dira historiako pasarte nagusiak. Gure herriaren bilakaeraren lekuko isilak dira.

Baleiteke baserri guzti honeek honezkero ezagunak izatea, zein auzotan dagozan, ze berezitasun daukien… Edo baleiteke gure herrian horrelako eraikinik dagoenik be ez jakitea. Liburuxka honen bitartez, gure herriko auzoetako baserri eta familien historia gogora ekartea edo gure herriko leku bereziak agirira ekarri eta ezagun bihurtzea gura geunke. Batera dala zein bestera dala, zeuen gustukoa izatea gura dogu.

Leixuri Arrizabalaga Arruza

Gatikako Alkatea

Estimado vecino/vecina

Mediante el libro que ahora tienes en tus manos el Ayuntamiento de Gatika ha querido brindar su pequeño homenaje a los caseríos de nuestro municipio. Los caseríos son el tesoro más valioso de nuestro patrimonio cultural; valioso, ya que han sido el escenario y la base de nuestra identidad e historia, han sido testigos silenciosos de la transformación de nuestro pueblo.

Puede que ya conocieras todos los caseríos que se recogen, en qué barrio se ubican o algunas de sus características; o puede que no conocieras la existencia de algunos de ellos y sean novedosos para ti. Esta publicación pretende recordar cuáles son los caseríos de nuestro pueblo y la historia de sus familias; o ayudarte a descubrir nuevos rincones. Ya sea de un modo u otro, espero que lo disfrutes.

Leixuri Arrizabalaga Arruza

Alcaldesa de Gatika

# Sarrera

Baserria, edo inguru honetan esaten dan moduan aldea-etxea, gure paisaiaren ardatz nagusietako bat da, eta mendeetan aldaketa ugari ezagutu baditu be, gaur arte iraun izan dau. Gehienetan sakabanatuta irudikatzen dogu bere lursail eta soloez inguratuta, baina jatorriz, baserriak auzunetxuetan sortu ziran, alkarren ondoan, eta hori argi erakusten deusku toponimiak.

Euskal Herriko kulturan, baserria etxebizitza baino gehiago da: ganaduaren aterpea, beharlekua, biltegia, eta familiaren bizilekua eta tenplu espirituala, gure aurretikoakaz eta ostekoakaz lotzen gaituana.

Baserriak harriz eta egurrez altzau izan dira. Sarri etxearen sostengua harrizko horma sendoak dirala pentsau arren, baserri zaharrenetan, benetan etxeari eusten deutsana egurrezko armazoia edo egiturea da; eta hau herriko aldea-etxe batzuetan ikusi daiteke gaur egun be. Etxe guztiak ez dira molde berekoak, baina baserri gehienek teilatua ur bitara daukie, balkoi luzeak alderik alde, portale zabala erdikaldean, eta hormak etxe-aurrean urtenagoak haizetik babesteko. Pisu bikoak izaten dira. Behean etxebizitzea eta gortea egoten dira; eta goian, jeneralean, logelaren bat, kamarea eta lastegia.

Eskualdeko herriak lez, Gatika be denpora gitxian asko aldatu da. Aspaldian nekazaritzak eta abeltzaintzak behera egin dabe nabarmen eta bizimoduari aurre egiteko bide barriak bilatu doguz. Horren ondorioz, etxe asko hutsik dagoz; eta batzuk, zoritxarrez, alperrik galtzen. Horregaitik derrigorra da era honetako ikerketak bideratzea bertoko baserriak behar dan moduan erregistrauta egon daitezan eta mendeetako ondarea jasota geratu daiten. Horixe da lan honen helburua, 1850 aurretik eraiki ziran etxeen katalogoa egitea. Izan be, baserri berbea bere esangura zabalenean hartu dogu, eraikin eta familia-eta lege-instituzino lez. Ondarearen aldetik, data horren ostekoak 'baserri barriak' dirala esan geinke. Guztira 106 etxe batu doguz.

Ikerketaren abiapuntua etxeei buruzko informazino idatzia biltzea izan da. Horretarako era desbardinetako iturri bibliografikoak erabili izan dira. Gainera Bizkaiko Elizaren Histori Artxiboan, XVII. mende hasieran Gatikako bateo-erregistroetan agertzen diran abizenak aztertu ditugu, sarri etxearen aitamena baino lehenagokoa dalako abizenaren aipua; eta sasoi haretan abizena eta etxearen izena bat etozalako. Liburuxka honetan emondako datuak erabilitako dokumentazinoaren araberakoak dira. Horrek ez dau esan gura Gatikako baserrien gaineko informazino gehiagorik edo zaharragorik ez dagoanik.

Idatzizko bilketaren ostean, alkarrizketak egin doguz herriko lekukoakaz eta bideoan grabau. Holan, mendeetan idatziz gorde diran leku-izenak eta gaur egun gatikarrek erabilten dabezanak bat datozan ikusteko erea izan dogu. Batzuetan bat egiten dabe; beste batzuetan, barriz, aldaketak egon dira eta jatorrizko izenak galdu egin dira.

Labayru Fundazioaren izenean eskerrak Gatikako Udalari lan hau egiteko gugana jo dauelako; eta gure eskerrik zintzoena lekukoei, erakutsi daben borondate eta pazientziagaitik. Horrez ganera, eskertu gurako geunke baserri kontuetan aditua dan Alberto Santana historiagileak emondako laguntasuna.

Labayru Fundazioa

# Introducción

El caserío, *baserria*, o como se dice en la zona de Gatika, *aldea-etxea*, es uno de los ejes de nuestro paisaje. Aunque habitualmente lo imaginamos aislado y rodeado de sus tierras de labranza, tiene sus orígenes en pequeñas barriadas, como puede apreciarse en la toponimia.

En nuestra cultura, el caserío es mucho más que un edificio: es también un lugar de trabajo, refugio del ganado, almacén, vivienda para la familia y templo espiritual que nos une con nuestros antepasados.

Los caseríos se han construido básicamente con madera y piedra. Aunque pensemos que los gruesos muros son el sostén de la casa, en los caseríos más antiguos, lo que realmente los mantiene en pie es el armazón de madera; las paredes de piedra son la envoltura. No se puede hablar de unas características comunes, pero muchos de ellos tienen la cubierta a dos aguas, balcones corridos, portales centrales y espolones o cortavientos en los muros laterales. En el piso inferior se ubica la vivienda y la cuadra, y en el superior alguna habitación, el camarote y el pajar.

En Gatika, al igual que en las localidades vecinas, la actividad agrícola y ganadera han descendido notablemente. En consecuencia, algunos caseríos están vacíos con el consiguiente deterioro. Por ello es necesario llevar a cabo este tipo de investigaciones para que quede constancia de nuestro patrimonio. El objetivo de este trabajo es catalogar los caseríos anteriores a 1850; tomando el caserío en su sentido más amplio, teniendo en cuenta tanto el edificio como la institución jurídica y familiar. Por lo que respecta al patrimonio, los posteriores a esa fecha podrían considerarse como 'caseríos nuevos'. Hemos catalogado un total de 106 caseríos.

El punto de partida ha sido el estudio de las distintas fuentes documentales, tanto del Archivo Histórico Foral como del Archivo Histórico Eclesiástico de Bizkaia. Los registros bautismales de principios del siglo XVII son una gran fuente de información ya que a menudo la documentación referida al apellido es anterior a la del propio caserío. Los datos aportados en esta publicación se limitan a las fuentes utilizadas, lo que no quiere decir que no haya ni más información, ni más antigua.

Tras el estudio de la documentación, se ha procedido a realizar entrevistas y grabaciones para contrastar y confirmar que los datos guardados durante siglos coinciden con los topónimos que se utilizan actualmente.

En nombre de la Fundación Labayru quisiéramos agradecer al Ayuntamiento de Gatika por encomendarnos esta labor; y a las personas entrevistadas por el entusiasmo y la paciencia que nos han demostrado. También queremos destacar la ayuda que nos ha ofrecido el historiador Alberto Santana a quien estamos muy agradecidos.

Labayru Fundazioa

## ITURRI BIBLIOGRAFIKOAK / FUENTES BIBLIOGRÁFICAS

- AHEV-BEHA: Archivo Histórico Eclesiástico de Vizcaya - Bizkaiko Elizaren Histori Arkibua.
- Bizkaiko XVIII. mendeko Sutegien Erroldak. (1704, 1745, 1796) / Fogueraciones de Bizkaia del siglo XVIII.

FORU AGIRITEGI HISTORIKOA / ARCHIVO HISTÓRICO FORAL

- 1814: Gatikako herritarrek Espainiako armadari egindako horniketak ordaintzeko gastuak. / Repartimiento vecinal realizado por el Ayuntamiento para cubrir los suministros aportados a las tropas españolas en 1813.
- 1823-1825: Gatikako Udalaren diru-kontuak / Cuentas municipales del Ayuntamiento de Gatika.
- 1825: Polizien Erroldak / Censo de Policías.
- 1838: Gatikako estadistika / Estadística de Gatika reformada en 1838.
- 1842: Udalaren kontu-liburua / Libro de cuentas de la Anteiglesia de Gatika.
- Urte desbardinetan epaitegietako erregistroetan, herritarren arteko liskarrak batzen dabezan dokumentuak / Documentación judicial diversa en la que constan los pleitos entre los vecinos y vecinas de la localidad.

## BIBLIOGRAFIA / BIBLIOGRAFÍA


BARRIO LOZA, José Angel (dir.). *Bizkaia: arqueología, urbanismo y arquitectura histórica*. Deustuko Unibertsitatea-Deiker; Bizkaiko Foru Aldundia, Hirigintza eta Ingurugiroa. Bilbao: 1989.

ITURBE, Ander. *Gatika, Laukiz, Maruri eta Urduliz: Bilakaera historikoa eta arte ondarea*. Bilbao: Bizkaiko Foru Aldundia. Bilbao: 1993.

KEREXETA, Jaime de. *Fogueraciones de Bizkaia del siglo XVIII*. Instituto Labayru; Bilbao Bizkaia Kutxa. Bilbao: 1992.

PALIZA, Maite. *El castillo de Butrón. Un episodio del romanticismo*. Estudios Arriaga. Bilbao: 1992. (Fotografía Archivo Ortega).

REMENTERIA, Iñigo. *Gure abi izenak: Bizkaia eta Gipuzkoa*. http://www.euskalkultura.com/fitxategiak/plone/files/genealogia-vasca/BizGip-2.pdf (2018-12-12).




# Gatikako auzoak
# Barrios de Gatika



# Butroe

AUZOA




## Arbiña Ahozkoa: *Arbiñé*

Toponimo honen lehenengo erreferentzia 1636. urtean agertzen da abizen lez; etxe modura, ostera, 1704an Bizkaiko su erroldetan. Gatikan egon ziran sei errotetako bat da. Gatikatik ezeze, ondoko herrietatik be hona eroaten eben artoa eta garia eihoten baserritarrek. 2000. urteko uriolek etxea bota eben eta gaur egun baserri zaharraren atzeko hormea baino ez dago zutunik. Hemengo presaraino heltzen da itsasoko ur gazia, eta lekukoek dinoenez, inguru hau sano ona ei da angulatan joateko.



El apellido *Arbina* se documenta en 1636, sin embargo la primera referencia de la casa es de 1704. Arbiña es uno de los seis molinos de Gatika. El caserío original se perdió en las inundaciones de 2000 y hoy en día sólo queda en pie la pared zaguera.

## Arratza Ahozkoa: *Arratza*

Aurkitu dogun lehendabiziko dokumentazinoa 1619 urtekoa da, abizen modura lehenago dokumentetan dan arren, 1588an. Lekukoen esanetan, XX. mendearen hasieran tabernea eta dendea egon ziran hemen eta, kategoriako kozinerea euki eban lez, jente ugari etorten zan bertara. Gaur egun, zati bi bereizten dira eta batean zein bestean egurrezko egiturea ikusi daiteke.

La primera documentación es de 1619, aunque el apellido ya consta en los registros de 1588. Según los informantes, a principios del siglo XX hubo una taberna-tienda a la que acudía numeroso público, ya que tenía una cocinera muy afamada.



## Arratzaibar Ahozkoa: *Arítxiberre / Arítxiberreatzeko*

Testu zaharretan ez dogu baserri honen ganeko informazinorik aurkitu. Baina eraikinak etxeaurrean daukan egurrezko egituran ikusi geinkezan astazaldiek etxe hau XIX. mendearen lehenengo erdikoa dala adierazoten deuskue. Lekukoek *Arítxiberre* edo *Arítxiberreatzeko* esaten deutsie. Seguruenik aurreko etxea egikeran hasiko ziran deitura hau erabilten.

No hemos encontrado información relativa a este caserío, pero según los expertos, sus características arquitectónicas, en concreto los tirantes oblicuos de su entramado de madera, *astazaldiak*, delatan que es de la primera mitad del siglo XIX.



## Butroeko errotea Ahozkoa: *Butroikoerroté*

Errota honi buruzko dokumentazinoa nahiko berandukoa da: 1838koa. Butroeko Magdalena ermitea baino beheratxuago dago, Butroeko Gazteluaren lurretan. Toponimoa *Butroe* abizen eta leku-izenak eta *errota* izenak osotzen dabe. *Errota* latinezko *rota* hitzetik dator. Berez errotea garia eihoteko harria zan; gerokoa da lantegia izentetako erabilten hastea.

La primera cita de este molino es bastante tardía, de 1838. Su nombre está compuesto del topónimo *Butroe* + sufijo locativo *-ko* + *errota*, sustantivo que primeramente designaba la piedra de moler y posteriormente comenzó a referirse al molino propiamente dicho.



## Butroeko gaztelua Ahozkoa: *(Butroiko) Kastillo*

Butroeko gaztelua Bizkaiko eraikin ezagun eta adierazgarrienetarikoa da. Butroe familiak edegi eban. Erdi Aroan dau jatorria; gaur egungo itxurea, aldiz, Cubas markesak XIX. mendean eginiko birmoldaketa sakonaren ondorioa da. Arkitektuak gaztelua egiteko orduan, etxegotorlekuaren oinarria baino ez eban errespetau.

El Castillo de Butrón es uno de los edificios más representativos de Bizkaia. Sus orígenes son medievales, pero la imagen que hoy en día conocemos es muy posterior, del siglo XIX.





Butroeko gaztelua 1879 aurretik. (Argazkia: Ortega Artxiboa)



## Dobaranalde [Gosetxe] Ahozkoa: *Gósetxe*

Dobaranalde toponimoa 1814an dokumentetan da eta horixe da etxearen jatorrizko izena. Baina lekukoek esan deuskuenez, auzokoek *Gosetxe* esaten hasi jakozan eta gaur egun izen honegaz ezagutzen dabe. Bigarren deitura hori 1825erako agertzen da testuetan. Orain Mahasti izeneko landetxea dago bertan.

El topónimo Dobaranalde, nombre original del caserío, se documenta en 1814. Pero los vecinos comenzaron pocos años después a designarlo como *Gosetxe*, y así se conoce actualmente. Hoy en día es un agroturismo.



## Martintxuena Ahozkoa: *Martíntxune*

1814an aurkitu doguz aldea-etxe honen lehenengo aitamenak. Izenak hiru elementu ditu: *Martin* izena, *-txu* atzizki txikigarria, eta *-ena* atzizkia, hiztunen erabileran *-ene*>*-ne* aldatu dana. Atzizki horrek 'etxea' adierazoten dau, beraz 'Martintxuren etxea' esan gura dau. Bizkaian arruntak dira horrelako egitura daben oikonimoak edo etxe-izenak.

Este caserío se cita por primera vez en 1814. El topónimo está compuesto de tres elementos: el nombre propio *Martín*, el sufijo diminutivo *-txu* y el sufijo *-ena*. Su significado es 'la casa de Martintxu'.



## Ola Ahozkoa: *Olá / Anunsiane*

Izenak berak adierazoten dauen moduan, etxe hau olea izan zan. 1796ko dokumentazinoan "*ferrería mayor y menor*" agertzen da. Gaur egungo lekuko gehienek ez dabe izen hori erabilten, *Anunsiane* esaten deutsie, bertan bizi izan zan andrea, *Anunzia* dalakoa, ezagutu ebelako. 1930ean, Jose Antonio Agirrek, *Euzko Gaztedi*ren buru zala, etxe honetako balkoitik mitina emon eban, Gatikako Gaztedi Katolikuaren inaugurazinoan.

En la fogueración de 1796 se refieren a esta casa como "*ferrería mayor y menor*". Su nombre original es Ola, pero hoy en día la denominan *Anunsiane*. Jose Antonio Aguirre, antes de ser lehendakari, dio un mitin desde el balcón de este caserío.



# Palaudo Ahozkoa: *Paládo*

Butroe errekearen bazterrean kokatuta dago. 1796 urteko Bizkaiko su erroldetan topau dogu lehenengo aipua. Baserria goitik behera barriztauta dago: etxe-aurrean harlangaitzezko hormak daukaz erdikaldera arte eta adreilua eta egurra erditik gora, lehengo baserrien itxurara. Gaur egun, *Caserío Butrón* izeneko landetxea dago bertan.

Está ubicado a orillas del río Butrón. Aparece documentado en la fogueración de 1796. Actualmente está completamente reformado. Hoy en día es un agroturismo y se denomina *Caserío Butrón*.



# Pikaraga Ahozkoa: *Pikéra*

Gatikako Udaleko artxiboko 1838ko Estadistiketan aurkitu dogu lehenengoz. Pikaraga aldeaetxea Margaltza mendian dago, guztiz isolatuta, Lemoizerako magalean. Seguruenik ganadua gordeteko borda izango zan eta XIX. mendearen hasieran konponduko eben segiduan bertan bizi ahal izateko. Etxe berezia da, aurreko fatxadea guztiz zarratuta daukalako, ez dauka leihorik. Hiru gorputz ditu, bazterretakoak itxita eta erdikoan dagoz portalea eta balkoi txikia.

El caserío Pikaraga aparece en 1838 en las Estadísticas del Ayuntamiento de Gatika. Es un caserío aislado, situado en el monte Margaltza. Originariamente sería una borda de ganado habilitada para vivir permanentemente a principios del siglo XIX.





# Garai

AUZOA



# Abadesena Ahozkoa: *Abásene*

*Abadezanena* 1696an agertzen da abizen lez. Etxeari jagokon lehenengo aitamena 1704koa da: *Abadesanena*. Kasu honetan pertsona baten lanbidea hartu da lehenengo elementutzat, *abadesa*, eta horri *-ena* (*-ene*) atzizkia gehitu jako; 'abadesaren etxea' da bere esangurea. Gatikako baserrien adibide argia da, inguru honetako etxeen ezaugarri guztiak gordeten ditu gaur egun be.



Las referencias de este nombre, tanto de apellido como de topónimo, son de la misma época, 1696 y 1704 respectivamente. En este caso, como primer componente aparece la mención a una profesión: *abadesa*, a la que se le añade el sufijo *-ena*, que significa 'casa de'.

# Axabide Ahozkoa: *Axebíde*

Axabide abizenaren aurreneko aipua 1622 urtekoa da: *Maria Enecoch de Ajabide de Urruticoechea*. Etxe modura Bizkaiko sutegien erroldetako lehenengo zerrendan topau dogu 1704an. Gaur egun, baserria goitik behera barriztauta dago eta ez dau gordeten jatorrizko baserriaren ezaugarririk.



La primera cita que hemos encontrado de este apellido es de 1622: *Maria Enecoch de Ajabide y Urruticoechea*. La mención a la casa se recoge en la fogueración de 1704. Hoy en día, está completamente renovada.

# Etxebarribekoa [Meñakena] Ahozkoa: *Bekoetzebarrí / Meñákane / Beñákane*

1704tik aurrera, dokumentazinoan etxe hau izentetako forma desbardinak agertzen dira: *Echebarría de abajo*, *Echabarri becoa* eta *Echabarría bajera*. Hauxe da etxe honen jatorrizko izena, baina 1842tik aurrera *Meñaquena* moduan be aitatzen da. Gaur egungo lekukoek bigarren deitura hori erabiltzen dabe eta jatorrizko izena galtzen joan da.



La primera alusión a este caserío, registrada en 1704, es *Echebarría de abajo* y ese es su nombre original. Posteriormente, a partir de 1842 aparece también como *Meñaquena*, que es la forma que ha prevalecido y que la gente utiliza hoy en día.

# Etxebarrigoikoa Ahozkoa: *Etzebarrí (goiko)*

Bizkaiko su erroldetako bigarren zerrendan agertzen da lehenengoz, 1745ean. Gaur egun guztiz hondatuta dago. Kapelea jausita dauka eta alboetako hormak sasiak eta landareek janda dagoz, justu-justuan agertzen dira hormetako harriak zuhaitz eta sastraka artean. Ahoz *Etzebarrigoikó* edo *Etzebarrí* esaten deutsie.



Se menciona por primera vez en la fogueración de 1745. Hoy en día se encuentra completamente derruido. Se intuyen algunos restos de las paredes entre la frondosa vegetación. Oralmente se le denomina *Etzebarrigoikó* o *Etzebarrí*.

# Galtzada Ahozkoa: *Galtzada / Kaltzada*

Etxe honeri buruzko dokumentazinoan *Calzada* formea agertzen da, erderazko bariantean. 1704 urtekoa da aurkitu dogun lehendabiziko erreferentzia Bizkaiko su erroldetan. Lekukoek ahoz bietara erabilten dabe: *Galtzada* zein *Kaltzada*. Bizkaiko toponimian arruntagoa da bigarren forma hau. Gatikan teilatua lau haizetara daukan etxe bakarrenetarikoa da.



Este topónimo se documenta en su variante castellana, Calzada. Aparece en las fogueraciones de 1704. En la forma oral, actualmente se utiliza tanto *Kaltzada* como *Galtzada*. Es uno de los pocos caseríos de Gatika que tiene la cubierta a cuatro aguas.

# Garai Ahozkoa: *Gárai*

Garai izena ugaria da toponimian, 'goiko aldea' esanguraz. Kasu honetan, baserriak eta auzoa izentetan ditu. 1623an dokumentetan da lehenengoz abizena. Gaur egun, lekukoek *Garai* esaten deutsie, baina agirietan ikusi dogunetik, jatorrizko izena *Garai Plazena* dala uste dogu. Hormak barriztauta dituan arren, ederto ikusten dira jatorrizko haretx-giharrez egindako armazoia eta goitik beherako pieza bakarreko hageak. Ezaugarri honeek XVI. mendearen amaierakoak dira.



El topónimo Garai designa tanto al barrio como al caserío. Como apellido aparece en 1623. Aunque hoy en día se le denomina Garai, según la documentación creemos que su nombre original fue *Garai Plazena*. Aunque está reformado mantiene los postes de roble que jalonan la fachada y que son característicos de las construcciones de finales del siglo XVI.

## Garaibengoetxea [Bengoetxea] Ahozkoa: *Bengotzé*

*Vengoechea* abizena 1625ean dokumentetan da. 1796ko su erroldetan, auzoaren izena hartzen dau aurretik eta *Garai bengoechea* agertzen da; *Bengo (beheango)* + *etxea* osagaiak dituen izena. Etxe honetan aurkitzen da Gatikako baserrietan mantentzen dan elementu arkitektonikorik zaharrenetarikoa: atzeko horman leiho gotikoa ikusi daiteke gaur egun bere.

*Vengoechea* consta como apellido en 1625. En la fogueración de 1796 el topónimo se completa añadiéndole el nombre del barrio: *Garai bengoechea*. Mantiene uno de los elementos arquitectónicos más antiguos: una ventana gótica en el muro zaguero.



## Garaigoitia [Goitia] Ahozkoa: *Goití*

Abizena 1628an Goitia moduan agertzen bada be, etxearen erreferentzia 1745etik aurrera auzoaren izenagaz osotuta agertzen da: Garaigoitia. Izenak ondo adierazoten dauan moduan, Garai auzoko etxeen artean goikaldean dagoana da. Gaur eguneko baserriak ez dau jatorrizkoaren ezaugarririk mantentzen.

La primera referencia del apellido Goitia es de 1628. A partir de 1745, al topónimo se le añade el nombre del barrio: Garaigoitia. Tal y como indica el segundo elemento del topónimo, el caserío se halla en la zona alta del barrio.



## Garaimartiena [Martiena] Ahozkoa: *Mártiñe*

Hainbat forma desbardin batu ditugu etxe hau izentetako: *Martiñena*, *Martiena*, *Garai Martena* eta *Martiena Garay*. Aipurik zaharrena 1704koa da. Izenaren osagaiak argiak dira: *Marti* euskal izena, Martinen kidea, eta etxea adierazoteko erabilten dan *-ena* (*-ene*) atzizkia, jatorriz deklinabideko Noren kasu-marka.

Se han recogido varias formas para designar a este caserío: *Martiñena*, *Martiena*, *Garai Martena* y *Martiena Garay*. La más antigua de ellas data de 1704. El topónimo consta de dos elementos: el nombre propio *Marti* y el sufijo *-ena* que significa casa, 'la casa de Marti'.





## Garaiostengoetxea [Ostengoetxea] Ahozkoa: *Óstingotze / Óstengotze*

*Garaiosteikoa* abizena 1677an dokumentetan da: *Martin de Elorça y de Garai Osteicoa*. Baserriaren erreferentziak modu desbardinetan agertzen dira 1704an hasita: *Osteingoechea, Garai Osteincoechea, Ostencoechea*… Auzo honetako etxe askotan, dokumentazinoan oikonimoaren aurretik auzoaren izena be agertzen da. Ahozko erabileran, barriz, ez da inoz aitatzen. Gaur egun ez da inor bizi eta egoera txarrean dago.

El apellido *Garaiosteikoa* aparece en 1677. Alude a la casa posterior de Garai. A partir de la fogueración de 1704 la referencia al caserío se ha documentado con distintas variantes, en algunas de ellas complementada con el nombre del barrio. Hoy en día está en ruinas.



## Iturburu Ahozkoa: *Ittúrburu*

Iturburu abizena 1636rako idatziz agertzen da Gatikako eleiz artxiboetan; etxearen aipua aurkitzeko, ostera, 1796ra itxaron behar da. Izenaren osagaiak garbiak dira: *iturri* eta *buru*. Bigarren elementu hau sarri agertzen da toponimian 'gainean' adierazteko. Beraz, kasu honetan etxearen kokapen geografikoa kontuan hartuta sortu zan bere izena. Sasoi baten etxe hau udalez Mungia zan eta eleizaz Gatika.

El apellido Iturburu se registra en el archivo de la parroquia en 1636. La casa, en cambio, no se menciona hasta la fogueración de 1796. La etimología del topónimo es clara: *iturri* (fuente) + *buru* (parte superior), por lo que el nombre hace referencia a la situación geográfica de la casa, 'encima de la fuente'.



## Iturralde Ahozkoa: *Ittúrralde*

1671ko dokumentuetan aurkitu dogu etxe honen aurreneko aitamena, abizen moduan XVII. mendearen hasierarako agertzen dan arren, 1617an. Izenak berak adierazoten dauen lez, iturriaren ondoan dagoan etxea da, etxearen behekaldean ditu gaur egun be iturria eta beste denpora baten erropak garbitzeko erabilten zan harraskea. Baserria bota eta haren lekuan txalet barria eginda dago.

Iturralde aparece documentado en 1671, aunque como apellido consta en los registros bautismales para comienzos del siglo XVII (1617). Tal y como su nombre indica, está situado al lado de la fuente y del lavadero del barrio Garai. El caserío fue derribado y hoy en día es un gran chalet.



## Iturribiarte [Barberuzarrena] Ahozkoa: *Barberusarrené / Barrusarrené / Barrusarné*



Gaur egun herritarrek erabilten daben izena, *Barberusarrené*, ez da dokumentuetan jaso; beraz, seguruenik gerora ipinitako izena da. Barberuzarra lanbide izenetik sortua. Etxearen kokapena eta Bizkaiko su erroldetako informazinoaren arabera (1745), jatorrizko izena Iturribiarte da. Ugazabandreek esan deuskuenetik, eskrituretan bietara agertzen da. Aldea-etxea bota egin zan eta gaur egun barria eginda dago. Etxearen lurretako atzekaldean dagoan harrizko hormea jatorrizko baserriarena da.

El topónimo *Barberuzarrena* no consta en la documentación, por lo que debe tratarse de una denominación posterior. El nombre original es Iturribiarte, aunque exceptuando los dueños, nadie lo conoce como tal. El caserío se derribó y se construyó la nueva casa. El muro de piedra que la rodea en su parte trasera es del caserío original.

## Lateta Ahozkoa: *Látata*



Lateta baserria 1704an agertzen da lehenengoz. Harrezkero dokumentu guztietan forma bera agertzen da. Jatorrizko baserria bota egin eben eta orain haren lekuan txalet barria dago eta ez dauka lehengo etxeagaz zerikusirik. Lekukoek ondo gogoratzen dabe etxe ondoan eukan patina.

El caserío Lateta se registra por primera vez en 1704 y desde entonces su nombre no ha sufrido ninguna variación. El edificio original se derribó y hoy en día es un chalet de nueva construcción.

## Olena Ahozkoa: *Ólene*



Ez dogu etxe honen aitamenik aurkitu dokumentazinoan. 1796ko fogerazinoetan *Oleaga* aitatzen da eta baleiteke bera izatea. Baina adituen ustez, baserriak erakusten deuskuzan ezaugarriakaitik, Olena XVIII. mendearen amaierakoa da. Baserri neoklasikoa da, jasez eraikita dago; eta itxuraz, inguruan dagozan besteetatik guztiz aldentzen da, ezaugarri baten izan ezik: honek be alboetako hormak fatxadea baino aurrerago ditu etxe-aurrea babesteko.

Aunque no hemos documentado este caserío, según los expertos, sus características nos indican que data de finales del siglo XVIII. Es una construcción neoclásica con espolones o muros laterales adelantados, preparado para tener balcón corrido a lo largo de toda la fachada.

## Ospitalea Ahozkoa: *Ospittelé / Ospittelsarrá*



Etxe honi buruzko informazinoa XIX. mendekoa da, Polizien Erroldan aurkitu dogu lehenengo aitamena, 1825ean: *Hospital*. Euskerazko izena, *Ospitale + a* da. Bizkaiko Foru Aldundiko Artxiboetako dokumentuetan forma desbardinetan agertzen da: *Hospital* eta *Antiguo Hospital*.

Las referencias a este caserío son tardías, del siglo XIX, y corresponden al Censo de Policías de 1825. En los documentos del Archivo Histórico Foral se recogen dos variantes: *Hospital* y *Antiguo Hospital*.

## Txantonena Ahozkoa: *Txántone*



Baserri hau inguruan dituan etxeak baino oraintsuagokoa da. XIX. mendera arte itxaron behar da beronen erreferentziaren bat aurkitzeko; lehenengoa 1838koa da. Baserriaren izena sortzeko orduan Bizkaiko toponimian hain arrunta dan formulara jo da, pertsona izena, kasu honetan *Txanton*, Antonen hipokoristikoa, gehi *-ena* (*-ene*) atzizkia. Beraz 'Txantonen etxea' esan gura dau.

*Txantoena* es posterior a otros caseríos de la zona. No aparece en la documentación hasta bien entrado el siglo XIX, en 1838. A la hora de crear el topónimo se ha recurrido a una fórmula habitual, unir un nombre propio, en este caso un apodo, con el sufijo *-ena*.

## Txosna Ahozkoa: *Txorná / Txorné*



1825eko Polizien Erroldan agertzen da lehendabizi. Lekukoek esan deuskuenez, *txorna* berbea etxe txikerra adierazoteko edo beste etxe nagusiago baten ondoan egiten danari esateko erabilten dabe. Kasu honetan, eraikin hau Garai baserriari joten dago. Berezitasun moduan aitatu daiteke, portalea, baserriaren erdian barik, ezkerraldean daukala. Eskoialdeko hormea goitik behera zarratuta dago.

El oicónimo *Chorna* aparece en 1825 en el Censo de Policías. En el habla local, este término se utiliza para designar a una casa pequeña o a una edificación menor anexa o cercana a otra de mayor tamaño.

## Uribarrena Ahozkoa: *Urúbarrene / Uríbarrene*

Etxe honeri buruzko aurreneko datua 1745ekoa da: *Uribarriena*. Izenaren etimologia argia da: *uri* izena (*villa*), eta *barren* izena, 'beheko aldea' adierazoten dauena. Etxea inguru honetan ohikoa dan lez, bizileku bikoa da. Aurrekaldean agiri-agirian dau egurrezko egiturea, eta portalearen erdikaldean daukan hagea be egurrezkoa da.



La primera referencia a esta casa es de 1745: *Uribarriena*. La etimología del nombre es transparente: el sustantivo *uri* variante occidental de *hiri* (*villa*), y el sustantivo *barren*, que significa parte baja.

## Urrestiena Ahozkoa: *Urrúştiñe*

Urrestiena abizen modura dokumentetan da lehenengo, 1640. urtean. Etxearen erreferentzia, ostera, 1700ekoa da. Toponimoak sortzeko orduan sarri joten da inguruan dagozan elementuetara, kasu honetan *hurresti* da izen honen lehenengo osagaia. Gurean hurretxa oso preziatua izan da, bai emoten dauan frutuagaitik, zein tresnak eta makilak egiteko zuragaitik. Etxeari dautsala labea dauka.



Urrestiena se documenta primeramente como apellido en 1640, y posteriormente como caserío en 1700. En este caso, el primer elemento del topónimo es el sustantivo *hurresti* (avellaneda). El avellano ha sido un árbol muy preciado tanto por su fruto como por la madera que proporciona.

## Urrutxua Ahozkoa: *Urrútxu*

*Urretxua* abizena 1618. urtean aitatzen da Bizkaiko Elizaren Histori Artxiboan; 1704ko su erroldetan, ostera, *Urrutxua* aldaera agiri da; *hurretx (>hurrutx)* + *-zu* atzizki kolektiboa. Aldea-etxea barriztetako orduan lehengo baserriaren egiturea mantendu dabe. Gaur egun, eskoialdean gehigarria dauka, balkoitxua eta guzti.



El apellido *Urretxua* se menciona en los registros de bautismo de Gatika en 1618. En la fogueración de 1704 aparece ya como *Urrutxua*, variante común de otros topónimos de Bizkaia. Está completamente renovado respetando la estructura original del caserío.

# Gorordo

AUZOA



# Artzubi Ahozkoa: *Artzubí*

Etxe honen lehenengo aipuak aurkitzeko XIX. mendera arte itxaron behar da. Polizien Erroldetan agertzen da lehenengoz, 1825ean. Oikonimo honen etimologia argia da: *harri* eta *zubi* hitzen elkarketatik sorturikoa da. Gaur egun, jatorrizko baserriari dautsala, aurrekaldean, hiru pisuko etxe barria eginda dago. Atzekaldean, ostera, aldea-etxearen teilatua eta hormak ikusi daitekez.



Artzubi es un caserío tardío, no tenemos referencias de él hasta 1825. Su etimología es clara, surge de la composición de *harri* (piedra) + *zubi* (puente). Hoy en día anexa al caserío, en la parte delantera, se ha contruído una casa de tres plantas.

# Gibelondobekoa Ahozkoa: *Gibélondobeko*

Sasoi beretsuan eraikitako baserri bi dira Gibelondo izena hartu dabenak. Kasu honetan, hau beherengo dagoana da. 1630ean aurkitu dogu abizenaren erreferentzia: *Maria de Guivelondo de abajo*. Etxearen aitamena 1704koa da. Gibelondobekoa izena hitz konposatua da eta hiru elementu ditu: *gibel*, 'atzeko aldea' adierazoten dauena, *ondo* eta *beheko*. Gaur egun barriztauta dago.



Los dos caseríos denominados Gibelondo son contemporáneos. El apellido se registra en 1630: *Maria de Guivelondo de abajo*. La referencia a la casa corresponde a la primera fogueración de 1704. El topónimo se compone de tres elementos: *gibel* (parte posterior) + *ondo* (al lado) + *beheko* (de abajo).

# Gibelondogoikoa Ahozkoa: *Gibélondogoiko*

Gibelondobekoa baino urte bat lehenagokoa da Gibelondogoikoa abizenaren aipurik zaharrena, 1629koa: *Asençio de Guivelondo de arriba*. Bizkaiko sutegien erroldetako lehenengo zerrendan agertzen da etxe moduan, 1704an. Bizitza biko baserria da eta portalea erdibanatuta dago. Gehigarriak ditu etxearen albo bietan.



La referencia de Gibelondogoikoa es un año anterior a su vecino, de 1629: *Asençio de Guivelondo de arriba*. Como caserío aparece por primera vez en la fogueración de 1704. Es un caserío bifamiliar con construcciones anexas a ambos lados del mismo.



# Gorordobekoa Ahozkoa: *Górdobeko*

*Gorordo becoa* formea 1704ko su erroldetan agertzen da. Kasu honetan auzoaren izena hartu daben etxe bien artean beherengo dagoana dala adierazoten dau. Etxeak lehengo egiturea mantentzen dau. Hormetako harria porlanagaz estalduta eta margoztuta dago; eta alderik alde doan balkoia, egurrezkoa barik, gaur egun burdinazkoa da.



*Gorordo becoa* aparece en la primera fogueración de 1704. Como su propio nombre indica, entre los caseríos que toman el nombre Gorordo, es el que se sitúa en la zona inferior. Es un caserío renovado de doble vivienda.

# Gorordogoikoa Ahozkoa: *Górdogoiko*

Gorordo abizena 1511n dokumentetan da; Gorordogoikoa, ostera, 1618an agertzen da forma erdaldunean: *Maria de Gorordo de arriba*. Izenak adierazoten dauan moduan, hauxe da Gorordo auzunetxuan gorengo kokatuta dagoana. Aurrekaldean, lehenago labasuak egiteko erabilten zan labea dauka.



Gorordo se registra como apellido en 1511, *Furtunno de Gorordo*. Gorordogoikoa, en cambio, no aparece hasta 1618 en su forma castellana: *Maria de Gorordo de arriba*. Frente a la casa tiene el horno, que en otros tiempos se utilizaba para tostar el maíz y hacer el pan.

# Gorordotxu Ahozkoa: *Górdotxu*

Gorordotxu beste biak baina oraintsuagokoa dala esan daiteke. 1725eko dokumentuetan agertzen da lehenengoz eta 1796ko su erroldan, *Gorordo la menor* ikusi daiteke. Seguruenik, ondoan dituan beste etxe biak baino txikiagoa edo barriagoa dalako hartuko eban izen hori. Gatikako baserrien ezaugarriak ditu: alboko hormak urtenago, alderik alde doan egurrezko balkoia eta teilatua isuri bikoa.



Gorordotxu es posterior a los anteriores, se cita por primera vez en un documento de 1725. Seguramente tomaría ese nombre por ser de menor tamaño que las casas vecinas. Mantiene algunas características de la zona: cortavientos en los muros laterales, balcón que recorre la fachada...

## Ibargaraiatzekoa [Larretxina] Ahozkoa: *Lárretxiñe*



Etxe hau 1704tik aurrera, era desbardinetan aitatzen da: *Ibargarai la última*, *Ibargarai atzecoa*, *Ibargarai zaguera*… Gorordo auzoko auzunetxu honetan dagozan hiru baserrietatik atzerengoa da. Gaur egun, herriko lekukoek *Larretxiñe* izenez ezagutzen dabe. Edadekoenak baino ez dabe gogoratzen sasoi baten hiru etxe honeei *Ibargaraik* (Ibargaraiak) esaten jakela. Jatorrizko baserria bota eta barria eginda dago. Orain lau etxe-bizitza ditu.

A partir de 1704 este caserío se cita de diversas maneras: *Ibargarai la última*, *Ibargarai atzecoa*, *Ibargarai zaguera*… Hoy en día se conoce como *Lárretxiñe*. Sólo los informantes de mayor edad recuerdan que a estos caseríos de les denominaba *Ibargarai*.

## Ibargaraiaurrekoa [Aurrekoetxea] Ahozkoa: *Aurrekotzé*



*Ibargarai delantera*, *Ibargarai aurrekoa* eta *Ibargaray Aurrecoechea* dira dokumentuetan topau doguzan erreferentziak. 1701ean aurkitu dogu bere lehendabiziko aipua. Hauxe da auzunetxuko etxeen artean lekukoek Ibargarai izenagaz gehien lotzen daben etxea, nahiz eta ahoz horren erreferentzia guztiz galduta egon.

Este es el caserío de esta barriada que más unión mantiene con su nombre original, Ibargaraiaurrekoa. Aunque en la forma oral se le dice *Aurrekotzé*, perdiendo el primer elemento del nombre. La primera cita documental es de 1701.

## Ibargaraierdikoa [Santuena] Ahozkoa: *Sántune*



Auzuneko beste etxe biakaz gertatzen dan moduan, gaur egun jenteak ez dau jatorrizko izena ezagutzen: Ibargaraierdikoa. Kasu honetan *Sántune* da aldea-etxe hau izentetako erabilten dan deiturea. Barriztauta dago, baina hondino mantentzen ditu egurrezko egiturearen aztarnak: portaleko hageak, aurreko horman txertatuta dagozan goitik beherako hageak, eta teilatuari eusten deutsen egurrezko besoak.

Al igual que sucede con las otras dos casas vecinas, hoy en día la gente no conoce su nombre original, Ibargaraierdikoa, y se refieren a él como *Sántune*, formado sobre el apodo *Santua*. El caserío está reformado pero mantiene intactos los postes y la viga carrera del portal.



## Landaluze Ahozkoa: *Lándaluse*



Leku-izen hau XVII. mendean dokumentetan da. Aurreneko erreferentzia abizenari jagoko eta 1618koa da: *Maria de Landaluçea*. Toponimo hau aldaketa barik mantendu izan da mendeetan. Etimologia argia da kasua honetan, *landa* izena + *luze* adjektiboa. Gaur egun guztiz barriztauta dago, baina behinolako itxurea mantentzeko ahalegina egin da. Etxearen albo baten gehigarria egin jako eta teilatua zeharo luzatuta dauka.

Este topónimo se documenta como apellido en el siglo XVII, en 1618: *Maria de Landaluçea*, y posteriormente ya como caserío en 1704. Se ha mantenido invariable a lo largo de los siglos. Tiene una etimología clara: se compone del sustantivo *landa* (campa) + adjetivo *luze* (largo).

## Madariaga Ahozkoa: *Madariá*



Madariaga abizenaren aitamenak XVII. mendearen hasieran topau geinkez, 1616an hain zuzen be: *Mari San Joan de Madariaga*. Izen honek ez dau idatzizko formetan aldaketarik izan eta bardintsu mantendu da gaur arte. Izenaren amaierako *-aga* atzizkiak lekua edo ugaritasuna adierazoten dau. Halanda ze, Madariagak 'madarien lekua' esan nahi dau, hau da, madariondoak egozan lekua.

El apellido Madariaga se cita a comienzos del siglo XVII, concretamente en 1616. Ha sido un apellido que ha perdurado en el tiempo sin sufrir ningún cambio. El sufijo *-aga* expresa 'lugar' o 'abundancia'. Por lo tanto designa un lugar en el que había perales.

## Sakoneta Ahozkoa: *Sákonta*



1796an aurkitu dogu etxe honen lehenengo aitamena. Baserria barriztauta dago eta agerian dauka jatorrizko harria. Portalearen erdian egurrezko postea mantentzen dau, oinarrian harria dauela; eta balkoiari eta teilatu-hegalari eusteko, egurrezko besoak ditu. Etxe aurrean labea dauka.

Hay que esperar hasta finales del siglo XVIII para encontrar el registro de este caserío en la fogueración de 1796. Está renovado y deja ver la mampostería de sus muros. En el portal mantiene el poste de madera.

# Zuatzu Ahozkoa: *Sutzú*

Euskal Herrian asko eta asko dira zugatzekin lotutako toponimoak. Hauxe da horreetariko bat. 1617an dokumentetan da abizena: *Mariandres de Çuaçu*. Zuatzu Bizkaian sano hedatuta dagoan leku-izena da. *Zugatz* berbea eta -*zu* atzizkia dira bere osagaiak. Zugatzez beteriko lekua izango zan eta hortik jatorko izena.

En la toponimia son muy abundantes los nombres que se refieren a árboles, este es uno de ellos. Como apellido se documenta en 1617. Se forma mediante el sustantivo *zugatz* (árbol) + el sufijo abundancial -*zu*, que significa 'lleno de' o 'abundante'.



# Zuatzubizkarra [Bizkarra] Ahozkoa: *Biskerré*

Topau dogun lehenengo aipua abizenari jagoko: *Catalina de Çuaçubiscarra*, 1641 urtekoa da. Etxeari erreferentzia egiteko modu desbardinak agertzen dira: 1704an *Zugazubizcar*, 1745ean *Zuazua Bizcarra*, eta 1838an *Sugasuvizcarra*... Zuatzu izenari toponimian hain ugaria dan *bizkarra* berbea gehitu jako.

La primera documentación corresponde al apellido y es de 1641: *Catalina de Çuaçubiscarra*. Posteriormente también aparecen las formas *Zugazubizcar, Zuazua Bizcarra* y *Sugasuvizcarra*. Al topónimo Zuatzu se le ha añadido el sustantivo *bizkarra* (loma, pero que en este caso parece denotar la espalda o parte trasera).



# Zuatzutxu Ahozkoa: *Sutzútxu*

1704koa da aurkitu dogun lehenengo aitamena: *Zuazo la última*. Ostean *Zuazua erdicoa* eta *Sugasuchu* be dokumentetan dira. Zuatzu etxearen ostean egindako etxeari -*txu* atzizki txikigarria gehituta sortu zan toponimo hau. Zuatzutxu baserria bota eta bere lekuan txalet ederra eginda dago. Bizileku bikoa da.

*Zuazo la última* es la primera referencia que hemos encontrado en 1704. A partir de esa fecha también se documenta como *Zuazua erdicoa* y *Sugasuchu*. El caserío Zuazutxu fue derribado y hoy en día es un chalet de nueva construcción.



# Igartua

AUZOA



## Faduraetxebarria Ahozkoa: *Paduraetxebarrí*

Jatorrizko baserria XIX. mendearen hirugarren hamarkadakoa da, 1838an dokumentetan da lehenengoz: *Echevarri con la Padura*. Lekuko gehienek ez dabe etxe hau gogoratzen izan. Bertan jaiotako lekukoak esan deuskunez "etxe eperditik bota" eta eraikin barria egin da. Gaurkoak ez dauka lehengo baserriagaz zerikusirik. Orain erresidentzia dago.



El caserío original era de los años 30 del siglo XIX, concretamente de 1838. La forma que hemos recogido es *Echevarri con la Padura*. La mayor parte de los informantes no recordaban este topónimo. El caserío se derribó y construyeron una nueva casa donde hoy en día hay una residencia de ancianos.

## Ibarguen Ahozkoa: *Ibérbune*

*Ybarguren* abizena 1616an dokumentetan da eta etxearen aipua hiru urte beranduago agertzen da, 1619an, *Ibargüen*. Inguru honetan ohikoa dan lez, bizitza bikoa da. Ezkerreko aurrekaldean gehigarria egin jako. Gaur egun barriztauta dagoan arren, ondo ikusten dira egurrezko egiturea eta goitik beherako enbor bakarreko hageak.



El apellido *Ybarguren* se documenta en 1616 y tres años más tarde se registra también como caserío: *Ibargüen*. Hoy en día está reformado, pero conserva parte del entramado tradicional de la época: destacando el poste de roble de la fachada.

## Igartuaerdikoa Ahozkoa: *Igértu / Igertuerdikó*

Bizkaian sano arrunta izan da oikonimoaren lehenengo osagaia auzoaren izena izatea. *Igartúa erdicoa* 1745ean aurkitu dogu lehenengoz dokumentuetan. Gaur egun, gatikarrek *Igertu* esaten deutsie, beste gehigarri barik, baina badira izen osoagaz be izentetan dabenak, *Igertuerdikó*. Gaur egun erabarrituta dago eta ez dauka lehengo baserriaren ezaugarririk.



En Bizkaia ha sido común que el primer elemento del nombre del caserío corresponda al del barrio. *Igartúa erdicoa* aparece en la segunda fogueración, en 1745. Hoy en día la mayoría de la gente le dice *Igertu* a secas, pero hay quien mantiene su nombre original, *Igertuerdikó*.



## Igartuagoikoa [Palazio] Ahozkoa: *Igertugoikó / Palasio*

Bizkaiko sutegien erroldetan 1796ko zerrendetan agertzen da lehenengoz: *Igartua de arriba*. Baina abizen modura, ostera, 1619an dokumentauta dago: *Maria Gorordo Ygartua de arriba*. Lekuko batzuk *Igertugoikó* izena erabili arren, herrian jente gehienak *Palasio* esaten deutso, etxe berezia dalako, teilatua lau haizetara daukalako. Auzunekoek *Etzebarri* be esaten deutsie. Etxeak hiru pisu ditu eta bietan alderik aldeko egurrezko balkoia. Atzekaldean harrizko eskilarea dauka.



En las fogueraciones de Bizkaia se cita en la de 1796: *Igartua de arriba*. Pero como apellido ya está registrado desde 1619: *Maria Gorordo Ygartua de arriba*. Actualmente se le conoce como *Palasio*, ya que es una casa singular, con cubierta a cuatro aguas y doble balconada.

## Igartuatzekoa [Kontsuluena] Ahozkoa: *Kóntzulune / Kóntzolene*

Igartua izenez ezagutzen diran baserrietatik azkenengoa da: Igartuatzekoa. 1745. urtean aurkitu dogu lehenengoz agirietan. XVIII. mendearen amaieran beste izen batzuekaz dokumentetan da: *Consuluena*, *Gonzaluena*. Gaur egun herriko jenteak izen horregaz ezagutzen dau eta ahoz *Kóntzulune* esaten deutso.



Como su propio nombre indica, Igartuatzekoa es la zaguera de las casas de este núcleo. Aparece documentada en 1745 como tal, pero para finales del siglo XVIII se cita como *Consuluena* y *Gonzaluena*. De ahí el nombre por la que se le conoce hoy en día: *Kóntzulune*.

## Igartuaurrekoa Ahozkoa: *Igertuaurrekó*

Igartua baserria 1646an dokumentetan da. Haren ostean sortu ziran auzunetxu honetan dagozan etxeak eta kokapen geografikoaren araberako izenak hartzen joan ziran. *Igartua aurrecoa* 1703an aurkitu dogu lehenengoz. Gatika inguruko baserrien eredu garbia da. Teilatua ur bitara, bizitza bikoa, balkoi luzea alderik alde eta aurrekaldean haizetik babesteko horma urtenagoak. Gaur egun ez da inor bizi.



El caserío Igartua data de 1646. Los que se construyeron después fueron tomando el nombre en función de su ubicación respecto a aquel. Igartuaurrekoa se documenta en 1703. Es un ejemplo típico de los caseríos de la zona con cubierta a dos aguas, balcón corrido, y espolones en sus muros laterales.

# Kimera [Ibarguengoetxea] Ahozkoa: *Kiméra*

Etxe honen lehendabiziko aipuak nahiko belukoak dira, XIX. mendera arte itxaron behar da: *Casa Quimera*. Edozelan bere gaur eguneko etxeko eskrituretan Ibarguengoetxea agertzen da, baina etxekoek izan ezik, inork ez dau izen horregaz ezagutzen. Goitik behera barriztauta dago eta hormetako harlandua eta harlangaitza erakusten deuskuz.



Las referencias a esta casa son bastante tardías, se documenta en el siglo XIX: *Casa Quimera*. En las escrituras actuales se refieren a ella como Ibarguengoetxea, pero nadie la conoce por ese nombre. Está completamente reformada manteniendo la piedra característica de las construcciones de la época.

# Olakoetxea Ahozkoa: *Olakotzesarrá / Olakotzé*

*Martin de Ybarguren y Olacoechea* da izen honi buruz aurkitu dogun lehenengo erreferentzia, kasu honetan abizen moduan; 1616. urtekoa da. Baserriari buruzko datuak 1704koak dira. Argazki zahar baten ikusi dogunez, Olakoetxeko portaleko janbak, egurrezkoak barik, harrizkoak ziran. XVIII. mendeko ezaugarria da hau. Baina egin jakon barriztetearen ostean ez da holangorik agiri. Etxe honen ondoan Olakoetxebarri egin ebenez, lekuko batzuk ahoz *Olakotzesarrá* be esaten deutsie.



*Martin de Ybarguren y Olacoechea* es la primera cita que hemos encontrado sobre este apellido, es de 1616. La mención del caserío data de 1704. Tal y como hemos comprobado en una foto antigua, tuvo las jambas del soportal de piedra y no de madera, pero con la renovación no queda ni rastro de ellas.

# Libaroa

## AUZOA



## Atzealdapa Ahozkoa: *Atzáldapata*

Baserri honen aurreneko erreferentzia Bizkaiko sutegi erroldetako 1704ko zerrendan agertzen da. Izen honen osagaiak: *atze* + *aldapa* dira. Ahoz erabilten dan formea, ostera, *Atzáldapata* da. Etxea barriztauta dago eta goikaldean porlanez tapauta badago be, beheko pisuan jatorrizko hormarria ikusi daiteke.

Las fogueraciones de 1704 nos dan la primera pista sobre este caserío. El topónimo se forma con la composición de dos elementos: *atze* (parte trasera) + *aldapa* (cuesta). La variante que se utiliza oralmente es *Atzáldapata*.



## Isidroena Ahozkoa: *Isídrone*

*Isidoroena* 1745ean agiri da lehenengoz. Beranduagoko erreferentzietan *Isidroena* eta *Libarona Isidroena* lez agertzen da. Bizkaian etxe-izenak sortzeko ohikoa dan egiturea erabili da: *Isidro* pertsona izena eta *-ena* (*-ene*) atzizkia. Lekukoek kontau deuskuenetik, etxe zaharra erre egin zan eta barria egin dabe. Ez dau jatorrizko baserriaren ezaugarririk gordeten.

*Isidoroena* es la primera forma documentada en 1745. Años después también se recogerán *Isidroena* y *Libarona Isidroena*. Según nos han contado los informantes, el caserío original se quemó y se contruyó uno nuevo.



## Legarribai Ahozkoa: *Learbí*

Idazkietan aurkitu dogun lehenengo erreferentzia 1725ekoa bada be, sutegien erroldetan ez da 1796ra arte agiri. Sasoi horren aurretik, dokumentazinoan Legarribai izeneko etxe bi topau doguz: *Legarribai la última* edo *Legarribai osteincoa*, eta *Legarribai aurrecoa*. Halanda be, gaur egun etxe bakarra dago.

Aunque este caserío se documenta en 1725, no aparece en los listados de las fogueraciones hasta 1796. Anteriormente a esta fecha se citan dos caseríos: *Legarribai osteincoa* y *Legarribai aurrecoa*. Hoy en día solamente se conserva uno de ellos.





## Libaroa [Libaroamartiena] Ahozkoa: *Libéro*

*Libarona* abizena XVII. mendearen hasieran agiri da, 1617an hain zuzen be. Etxearen lehendabiziko aipua 1704koa da, *Libarona*. 1796an, ostera, *Libarona Martiena* jaso dogu. Hainbat dira auzunetxu honetan izenaren lehenengo osagaitzat auzoaren erreferentzia hartzen dabenak. Etxekoek *Libaronamartiena* dala jakin arren, eskrituretan holantxe agertzen dalako, herrikoek *Libéro* esaten deutsie.

*Libarona* se cita como apellido en 1617 y como caserío en 1704. En cambio, en las fogueraciones de 1796 se registra como *Libarona Martiena*. Esta es la forma que aparece en las escrituras de la casa, pero nadie lo conoce por ese nombre. Todos le dicen *Libéro*.



## Libaroaetxebarria [Etxebarria] Ahozkoa: *Etzebarrí / Etzebarrigoikó*

Bizkaiko sutegien erroldetako 1704 urteko zerrendan agertzen da lehenengoz: *Echabarri*. Izenaren bigarren elementuagaitik esan daiteke, seguruenik, hauxe dala Libaroa izena hartzen dabenetatik, beluen sortutakoa. Jatorrizko etxea atzeragotxu egoan, bizitza bikoa zan. Erre egin zan eta gero egin eben gaur egun ezagutzen doguna, etxebizitza bakarrekoa. Berezitasun moduan aipatu daiteke portalea, erdikaldean barik, etxearen eskoialdean daukala.

En las fogueraciones de 1704 aparece como *Echabarri* y en 1796 como *Libarona Echebarría*. Por su nombre podemos intuir que seguramente será el caserío más reciente de este núcleo. El caserío original se quemó y posteriormente se construyó el que conocemos hoy en día.



## Libaroagoikoetxea Ahozkoa: *Liberogoikotzé/ Goikotzé/ Liberogoikó*

*Libarona de Goicoechea* abizena 1560rako dokumentetan da. Aurkitu dogun erreferentzia zaharrenetarikoa da. Oikonimo lez hiru forma desbardin jaso ditugu 1704tik aurrera: *Goicoechea*, *Libarona Goicoechea* eta *Libaronagoia*. Ahoz be bariante bat baino gehiago batu dira: *Liberogoikotzé*, *Goikotzé* eta *Liberogoikó*.

El apellido *Libarona de Goicoechea* se registra en 1560. Para referirse al caserío hemos encontrado distintas variantes a partir de 1704: *Goicoechea*, *Libarona Goicoechea* y *Libaronagoia*. Oralmente también se utilizan formas varias: *Liberogoikotzé*, *Goikotzé* y *Liberogoikó*.



## Martierrota Ahozkoa: *Matierrota*

*Matierrota* edo *Martierrota* 1745eko su erroldetan jaso dogu. Izenak berak esaten deuskunez, errotea da eta errekatxuaren bazterrean kokatuta dago. Etxeari dautsala, ezkerraldean, beste eraikin bat dauka gaur egun. Hormetan argi ikusten da harlangaitzaren eta kantoi-harrietako harlanduaren arteko desbardintasuna. Aurrekaldean mahats-parra ederra dauka.

*Matierrota* se documenta en 1745 y *Martierrota* en 1756. Tal y como su propio nombre indica, se trata de uno de los molinos de la localidad. En sus muros puede verse claramente la diferencia entre la mampostería de la fachada y la sillería de los cantos.



## Pitxiruena Ahozkoa: *Pítxone*

Etxe hau izentetako bariante desbardinak aurkitu ditugu: *Pichirriena*, *Pichiruena* eta *Picheruena*. Euretatik lehenengoa da zaharrena, 1745ekoa. Ahoz *Pítxone* esaten jako. Hormak eta balkoia porlanez tapauta daukaz, baina zurezko hageak antzematen dira. Teilatu-hegalari eusteko egurrezko besoak ditu.

Hemos encontrado varias formas en la documentación: *Pichirriena*, *Pichiruena* y *Picheruena*. La primera de ellas es la más antigua y data de 1745. Aunque tiene sus muros cubiertos, nos muestra restos del entramado de madera tradicional.



## Santiagoena Ahozkoa: *Santíune*

Lehenengo erreferentzia Bizkaiko su erroldetako bigarren zerrendan agertzen da, 1745ean, *Santigoena*. Kasu honetan be, *Santiago* pertsona izena hartzen da lehenengo osagaitzat eta *etxea* adierazoten dauen *-ena* (*-ene*) atzizkia gehitu jako. Esangurea 'Santiagoren etxea' izango litzateke. Jatorrizko baserria erre egin zan eta gero etxe barria egin eben.

La primera referencia que hemos encontrado aparece en las fogueraciones de 1745: *Santigoena*. En este caso el topónimo se forma uniendo el sujifo *-ena* que significa 'casa de' al nombre propio Santiago, por lo que su significado sería 'la casa de Santiago'.



# Sertutxa

## AUZOA



## Alegria Ahozkoa: *Alegrí*

1704ko Bizkaiko su erroldetan topau dogu aldea-etxe honen lehenengo aitamena. Harrezkero, forma bera agertzen da beti dokumentazinoan. Ahoz *Alegri* batu dogu, inguru honetan ohi dan lez, amaierako artikulua galduta. Orain etxe barria eginda dago.

En 1704 aparece la primera cita sobre este caserío: *Alegría*. A partir de entonces, se ha mantenido invariable. Oralmente le dicen *Alegrí*, y como es característica del dialecto de la zona, pierde el artículo final.



## Delurtobekoa Ahozkoa: *Delortubekó / Delortusarrá*

Delurto abizena Gatikako zaharrenetarikoa da, 1455eko agirietan aurkitu dogu lehenengoz: *Rodrigo de Delurto*. Etxearen aipurik zaharrena, barriz, 1645ekoa da eta forma bera mantentzen da. Seguruenik, hori izango zan izen horregaz egindako lehenengo baserria. Harrezkero hiru baserrik hartu dabe deitura hori lehenengo osagaitzat. Hauxe da euretatik beherengo dagoana. Lekukoek ahoz *Delortubekó* edo *Delortusarrá* esaten deutsie.

Este apellido es uno de los más antiguos de Gatika, se registra en documentos de 1455: *Delurto*. La primera referencia del caserío se recoge dos siglos después, en 1645. Probablemente este será el primero de los caseríos que luego tomaron ese nombre. Los locales lo denominan *Delortubekó* o *Delortusarrá*.




## Delurtoerdikoa Ahozkoa: *Delortuerdikó*

Dokumentazinoaren arabera, baserri hau Delurto izena hartzen dabenetatik barriena da. Topau dogun lehenengo aitamena Polizien Erroldetakoa da, 1825ekoa, hain zuzen be. Lekukoek *Delortuk* esaten deutsee hirurei, zein dan zein bereiztu barik. Etxe zaharra bota egin eben eta haren lekuan pisu biko etxe barria eginda dago.

Este es el caserío más joven de los tres que se nombran como Delurto. Su primera referencia aparece en el Censo de Policía en 1825: *Delurto medio*. Los informantes los denominan genéricamente como *Delortuk*, sin diferenciarlos entre sí. El caserío original se derribó y se construyó la nueva casa.



## Delurtogoikoa Ahozkoa: *Delortugoikó*

*Mari Lopez de Delurto de Suso* da aurkitu dogun abizenaren erreferentziarik zaharrena, 1677koa. Etxearen aitamena, ostera, 1704koa da: *Delurto de arriba*. Aldea-etxe ederra eta galanta da, hiru gorpuzduna; eta gaur egun hirugarren pisua be badauka. Hormetako kantaletan harlandua erabili da.

La mención del apellido más antigua que hemos encontrado es de 1677: *Mari Lopez de Delortu de Suso*. Como caserío se documenta en 1704: *Delurto de arriba*. Se trata de un caserío de grandes dimensiones, con tres cuerpos, portal arquitrabado y espolones o muros adelantados en los laterales.



## Intxausti Ahozkoa: *Intxústi*

*Ynsausti* abizena 1632an topau dogu lehenengoz. 1704koa da etxeari jagokon aurreneko aitamena. Izenaren etimologia argia da: *intxaur* izena + *-di* multzo atzizkia, beraz intxaurrondoak dagozan lekua adierazoten dau. Ahoz *Intxústi* esaten jako. Inguru honetako baserrien adibide argia da.

El apellido *Ynsausti* se registra en 1632 y la referencia al caserío es de la primera fogueración, de 1704. En cuanto a la etimología podemos decir que se compone del sustantivo *intxaur* (nuez) + el sufijo colectivo *-di* que significa ‘bosque o plantación de’.



## Larrate Ahozkoa: *Larráte*

Baserri hau XIX. mendearen erdikaldean eraiki zan. 1838koa da aurkitu dogun lehendabiziko testigantza idatzia. Leku-izen honen etimologiak ez dauka zalantzarik: *larra* + *ate*. Jatorrizko baserria bota egin eben eta gaur egun etxe barria eginda dago.

Este caserío es de mediados del siglo XIX. Se cita por primera vez en 1838. La etimología es bastante clara. Se forma con la composición de *larra* (pastizal) + *ate* (puerta, entrada). El caserío original fue derribado y hoy en día es un edificio de nueva construcción que nada tiene que ver con el de antaño.



# Lubarrieta Ahozkoa: *Lubérritta / Lugúrritta*

Gatikako udal artxiboaren arabera, *Lubarrieta* aldea-etxearen lehenengo aipua 1665ekoa da. Harrezkero beste bariante batzuk be dokumentau izan dira: *Lugarrieta* eta *Luberrieta*. Izenaren etimologia argia da: *lubarri* (*luberri*) izena eta sarritan toponimian agertzen dan *-eta* atzizkia. Adituen arabera, Gatikako baserririk dotore eta ederrenetarikoa da. Etxe-aurreko horman armarria be badauka.



Según el archivo municipal de Gatika, *Lubarrieta* se documenta en 1665. Posteriormente también se han registrado otras variantes: *Lugarrieta* y *Luberrieta*. Según los expertos, es uno de los caseríos de mejor porte del municipio; tiene un blasón armero en su fachada.

# Sertutxa Ahozkoa: *Sertútxe*

1617koa da abizenari jagokon lehendabiziko aitamena: *Mariandres Çuaçu Certucha*. Etxeari jagokona, ostera, 1647koa da. Hauxe izango da seguruenik Sertutxa izena hartzen daben etxe guztietatik lehenengoa, eta honen erreferentzia hartuta sortu dira gero besteen izenak. Adituen esanez, etxe-aurrean, XVII. mendearen amaieran eta XIX.enean egindako konponketen aztarnak agiri dira. Baserri galanta gaur egun hutsik dago.



La primera mención del apellido es de 1617: *Mariandres de Çuaçu Certucha*; y la del caserío es de 1647. Este será probablemente el primer caserío de este núcleo y en función de su localización geográfica se han ido formando los topónimos de los caseríos vecinos. Hoy en día está deshabitado.

# Sertutxabeitia [Beitia] Ahozkoa: *Beittí*

Gatikako eleizako artxiboetan 1620an agertzen da abizen hau: *Pedro de Sertucha Beitia*. 1704tik aurrera etxearen aitamenak bitara egiten dira: *Beitia* eta *Sertucha Beitia*. Herritarrek ahozko komunikazinoan *Beittí* erabilten dabe. Izenaren bigarren osagaiak baserriaren kokapena adierazoten deusku, Sertutxa baserriaren behekaldean dago.



*Pedro de Sertucha Beitia* se documenta en 1620 en los archivos de la parroquia. A partir de 1704 el caserío aparece como *Beitia* y también como *Sertucha Beitia*. El segundo elemento del topónimo nos indica que se ubica en la parte baja del caserío Sertutxa.



# Sertutxaetxebarria Ahozkoa: *Sertutxekoetzebarri / Sertutxe-Etzebarri*

*Sertucha Echebarría* Bizkaiko sutegi erroldetako bigarren zerrendan agertzen da, 1745ean. Lekukoek ahoz bariante bi erabilten dabez: *Sertutxekoetzebarri* eta *Sertutxe-Etzebarri*. Inguru honetako ezaugarri argiak ditu. Goiko pisuan, ohiko egurrezko egiturea nabarmen ikusten da horma zuriaren kontra.



*Sertucha Echebarría* se registra en la fogueración de 1745. Es un caserío típico de la zona. En el primer piso, se ve claramente el tradicional entramado de madera que destaca sobre el fondo blanco de la fachada.

# Sertutxagoikoetxea [Goikoetxea] Ahozkoa: *Goikotzé*

1643koa da abizen honen aurreneko aipua: *Domingo (...) y de Sertucha Goicoechea*. Etxeari jagokona 1704koa da. 1796ko sutegi erroldetan aurkitu dogun informazinotik etxe hau *Sertucha goicoechea la zaguera* da. Gaur egun be aspaldiko ezaugarri arkitektonikoak ikusi daitekez etxe-aurrean.



El apellido *Sertucha Goicoechea* se menciona por primera vez en el archivo parroquial en 1643. Por lo que respecta al caserío, aparece en la fogueración de 1704. En la información aportada en la foguera de 1796 se cita como *Sertucha goicoechea la zaguera*.

# Sertutxagoikoetxeaurrekoa Ahozkoa: *Karnérone*

Gaur egun *Karnérone* izenagaz ezagutzen dan etxearen jatorrizko izena Sertutxagoikoetxeaurrekoa da. 1704tik aurrera, dokumentuetan modu desbardinetan agertzen da: *Aurrekoa*, *Goicoeche aurrecoa* eta *Sertucha goicoechea delantera*. Zoritxarrez, gaur egun oso egoera txarrean dago, baina etxe-aurrean portale ganeko hagea nabarmentzen da.



Hoy en día conocemos este caserío como *Karnérone*, si bien este topónimo no aparece en la documentación. Su nombre original es Sertutxagoikoetxeaurrekoa. Actualmente se encuentra en estado ruinoso pero en su fachada destaca una hermosa viga carrera.

# Sertutxaldekoa [Aldekoa]

Ahozkoa: *Aldekó*

*Aldecoa* abizena 1616an jasoa da. Etxe moduan 1703ko agirietan aurkitu dogu. Dokumentazinoan ikusitakotik, sasoi baten Aldekoa bi egon ziran, *Sertucha Aldecoa delantera* eta *Sertucha Aldecoa Zaguera*. Gaur egun bakarra dago. Izenak adierazoten deuskunez, Sertutxa baserriaren ondoan egindakoa da. Gaur egun barriztauta dago.

El apellido *Aldecoa* se ha registrado en 1616 y como caserío se documenta en 1703. En función de la información aportada por los textos sabemos que hubo dos caseríos: *Sertucha Aldecoa delantera* y *Sertucha Aldecoa Zaguera*. Hoy en día queda solamente uno.



# Ugarte

AUZOA



# Abadena Ahozkoa: *Abadéne*



Baserri hau XVIII. mendearen amaierakoa da. Bizkaiko sutegi erroldetako hirugarren zerrendan, 1796an, aurkitzen dogu lehenengo erreferentzia: *Abadena*. Kasu honetan etxearen izena sortzeko *abade* eta *-ena* (*-ene*) atzizkia erabili izan dira, 'abadearen etxea' da bere esanahia. Toponimo hau ugaria da gure herrietan. Etxea goitik behera barriztauta dago.

Este caserío es de finales del siglo XVIII. Se registra en el último listado de las fogueraciones en 1796 como *Abadena*. El topónimo se compone de dos elementos: el sustantivo *abade* (cura) + el sufijo *-ena* (*-ene*) que significa 'casa de'. El caserío está completamente renovado.

# Aranena [Arena] Ahozkoa: *Árene / Aréne*



Etxe hau aitatzeko orduan, 1704tik aurrera bariante bi dokumentetan dira: *Aranena* eta *Ugarte Aranena*, auzoaren izena lehenengo osagaitzat hartuta. Ahoz be forma bi batu doguz; izen bera da, baina azentua silaba desbardinetan dala: *Árene* eta *Aréne*. Etxeko hormetan harlangaitza erabili da; kantaletan, ostera, harlandua. Goiko pisuan adreilua eta zurezko egiturea nabarmendu behar dira.

A partir de 1704 este caserío aparece documentado en dos variantes: *Aranena* y *Ugarte Aranena*, tomando como primer elemento el nombre del barrio. Como suele ser habitual, nos muestra labor de mampostería en los muros y de sillería en los cantos y en los espolones de los muros laterales.

# Billelako errotea Ahozkoa: *Birlekoerroté / Latzagané / Latzaganekoerroté*



Errota honen jatorrizko izena Billela da, holantxe agertzen da 1704ko su erroldetan. Inguru honetan Butroi ibaiak marketan dau Mungia eta Gatika arteko mugea eta Gatikako lurretan egon arren, alboerriko auzoaren izena hartzen dau. Edozelan be, gaur egun jenteak beste izen bat be erabilten dau: *Latzagané* edo *Latzaganekoerroté*. Baina hori gure lekukoen denporan errotea erosi ebanaren abizena ei da.

El nombre original de este molino es Billela, así consta en la fogueración de 1704. Se encuentra en el límite entre Gatika y Mungia, de ahí el nombre del barrio vecino. En cualquier caso hoy en día muchos le dicen *Latzagané* o *Latzaganekoerroté*, por ser el apellido de la persona que lo compró.



# Iturrieta Ahozkoa: *Ittúrritta*



Abizen hau 1624an agiri da lehenengoz: *Catalina de Yturrieta*. 1704koa da etxeari jagokon lehenengo aipua. Toponimo honen etimologiak ez dauka zalantzarik: *iturri* + *-eta* atzizkia, iturriak dagozan lekua esan gura dau. Baserria bizileku bikoa da, bata dago konponduta, eta bestea lehengo erara.

Este apellido se documenta en 1624: *Catalina de Yturrieta*, y la mención al caserío aparece en la primera foguera, en 1704. La etimología no presenta dudas: sustantivo *iturri* (fuente) + el sufijo *-eta*, que significa 'sitio de', por lo tanto se refiere a un lugar donde hay fuentes.

# Landa Ahozkoa: *Landa*



1665ekoa da etxe honen lehendabiziko aipua, eta arean lehentxuago, 1626an agertzen da abizen lez. Portalean dagoan harrizko inskripzino baten 1820 urtea agiri da. Barriztauta dagoan arren, portaleko zoruan gure baserrietan ohikoak izan diran harlosak mantentzen dauz. Atzekaldean antxinako leihoa dauka, gaur egun harriz betea. Teilatu-hegalari eusteko egurrezko besoak daukaz.

1665 es la fecha en la que se cita el caserío por primera vez. Cuatro décadas antes aparece como apellido. Aunque está renovado, mantiene en el portal las losas de piedra muy habituales en otro tiempo. En el muro zaguero aún conserva un vano antiguo, que hoy en día está relleno de piedra.

# Leuxarra Ahozkoa: *Lauxerré / Lauxerrekoerroté*



Aurkitu dogun dokumentazinoan, Leuxarra abizena zaharrenetarikoa da, 1511koa, hain zuzen be: *San Juan de Leusarra*. Izen hori konposizinoan erabilita Ugarte auzoko etxe-izen ugari sortu dira. Abizen honek emoten deutso izena erroteari be. Errotea izanik, eraikinaren aurrekaldea errekearen gainean dago eta horregaitik etxerako sarrerea albo baten dago.

Leuxarra es uno de los apellidos más antiguos que hemos encontrado en la documentación (1511): *San Juan de Leusarra*. Este nombre se ha utilizado en composición para designar varios de los caseríos de este barrio, uno de ellos es este molino que ya se documenta en 1703.

## Leuxarraetxebarria Ahozkoa: *Etzebarrí*



Leuxarraetxebarria 1745ean aurkitu dogu lehenengoz agirietan. Batzuetan *Leuxarra* izenagaz konposizinoan eta beste batzuetan *Echebarria* lez ikusi daiteke. Lekukoek etxe honen sidurria galduta euki dabe, gerra zibilaren denporan bonba batek behera bota eta luzaroan hondakinak baino egon ez diralako. Urteak garrenean baserria egoan lekuan etxe barria egin dabe. Etxekoek *Etzebarri* esaten deutsie.

Leuxarraetxebarria se registra en 1745 y a partir de esa fecha aparece tanto *Echebarria* como *Leusarra Echebarría*. Esta casa fue derribada por una bomba en tiempos de la Guerra Civil. Muchos años después construyeron la que hoy en día conocemos. Los propietarios de la casa la denominan *Etzebarri*.

## Leuxarrajauregia Ahozkoa: *Palasio*



Leuxarra izenagaz sortutako beste adibide bat dogu hau. 1796ko testuetan *Lauxarra* agertzen da eta torretxea dala adierazoten da, eta 1825eko Polizien Erroldetan *Palacio de Leusarra* irakurri daiteke. Eta horixe da, hain zuzen be, gatikarrek erabilten daben formea, *Palasio*. Bizitza biko etxea da. Alde bat dago konponduta eta bestean ez da inor bizi, teilatua be jausita dauka, eta dagozan hormak ozta-ozta mantentzen dira.

Este es otro ejemplo de topónimo compuesto por el apellido Leuxarra y en este caso el sustantivo *jauregia* (palacio). En la fogueración de 1796 aparece como *Lauxarra* y consta como casa torre, y en 1825 se registra como *Palacio de Leusarra*. Esa es la forma que utiliza la gente hoy en día: *Palasio*.

## Leuxartxu Ahozkoa: *Lauxertxu*



Dokumentazinoan etxe hau adierazoteko hiru forma desbardin topau doguz: *Leuzarchu*, *Leusarrichu* eta *Lauxarra la menor*. 1704koa da euretako lehenengoa. Inguru honetako baserrien adibide argia da: bazterreko hormak urtenago ditu haizetik babesteko, puntarik puntarako balkoia dauka, nahiz eta gaur egun porlanezkoa izan; eta albatearen gainean, bedar-sikuak eta garaitikoak lastegira igoteko erabilten zan sarreratxua dauka.

Hemos encontrado tres variantes distintas para referirse a este caserío: *Leuzarchu*, *Leusarrichu* y *Leusarra la menor*. La primera de ellas es de 1704. Es un caserío que cuenta con las características propias de esta zona. También conserva la entrada lateral encima de la puerta de la cuadra, *albatea*, por la que se introducía la hierba al pajar.



## Mestika Ahozkoa: *Mestiké*



*Mestika* aldea-etxea 1704an agiri da lehenengoz eta holantxe agertzen da geroko dokumentu guztietan. Eraikin berezia da. Baserri bi dagoz alkarri lotuta eta etxearen jatorrizko egiturea guztiz galduta dauka.

El caserío *Mestika* se registra en el año 1704. A partir de entonces, el topónimo ha permanecido invariable. Se trata de un edificio peculiar, ya que es la unión de dos caseríos lo que hace que haya perdido su imagen original.

## Ugarte Ahozkoa: *Ugarte*



Ugarte abizena 1616an topau dogu lehenengoz idazkietan: *Catalina de Ugarte*. Aldea-etxearen erreferentzia 1704koa da. Ugarte izena sano arrunta da Bizkaiko toponimian eta isla adierazoteaz ganera, erreka biren arteko lekua edo urbitartea be adierazoten dau. *Ur* eta *arte* dira hitzaren osagaiak. Etxe ederra da, hiru gorpuzduna eta portale zabala dauka erdi-erdian.

El apellido Ugarte, tan común en Bizkaia, se documenta en el archivo parroquial en 1616. La referencia al caserío es de 1704. Este topónimo se compone de dos elementos: *ur* (agua) + *arte* (entre). Significa isla, pero también se designa así al lugar que está entre dos ríos.

## Ugarteaurrekoa [Doletxiena] Ahozkoa: *Dóletxiñe / Dólixene*



Etxe honen lehenengo aitamena 1704koa da: *Ugarte Aurrecoechea*. Baina XVIII. mendearen amaieratik aurrera beste izen batzuk hartzen ditu: *Ugarte Dollusena* eta *Dullusena*. Gaur eguneko eskrituretan *Ugarteaurrekoa* agertzen da, "*también conocida como Dolarena o Donluisena*". Gatikarrek ahoz modu bitara esaten deutsie: *Dóletxiñe* eta *Dólixene*. Guztiz barriztauta dago.

Este caserío consta en su primer registro en 1704 como *Ugarte Aurrecoechea*. Pero a partir de finales del siglo XVIII también aparece como *Ugarte Dollusena* y *Dullusena*. Hoy en día la gente de Gatika lo conoce como *Dóletxiñe* o *Dólixene*. Está completamente reformado.

# Zugaztiatzekoa Ahozkoa: *Sugustiatzekó / Subistiatzekó*



Gatikako eleiz artxiboan, *Çugasti* abizena 1618an agiri da lehenengoz. Aldea-etxeari jagokonez, 1704an *Zugasti* dokumentetan da. 1796an, barriz, *Zugasti Zaguera* dakar. Ahoz *Sugustiatzekó* edo *Subistiatzekó* esaten deutsie. Askotan *Sugustik* be erabilten dabe, baserri biak izentatzeko. Etxebizitza bikoa da, bata dago konponduta eta bestea ikutu barik.

El apellido *Çugasti* se documenta en 1618 y la primera referencia al caserío es de 1704. En la fogueración de 1796 consta como *Zugasti Zaguera*. Oralmente se utilizan dos variantes: *Sugustiatzekó* y *Subistiatzekó*. Aunque muchos informantes les dicen *Sugustik*, refiriéndose a los dos caseríos.

# Zugaztiaurrekoa Ahozkoa: *Sugustiaurrekó / Subistiaurrekó*



1704koa da etxe honi buruzko lehenengo aitamena: *Zugasti delantera*. Leku-izen honen etimologia argia eta garbia da, zugatzak edo arbolak dagozan lekuari esaten jako. Ahoz *Sugustiaurrekó* edo *Subistiaurrekó* esaten deutsie. XVIII. mendean baserrietan erabilten hasi ziran ezaugarria mantentzen dau gaur egun be, portaletako janbak harrizkoak dira.

En su primer registro en 1704 se menciona como *Zugasti delantera*. Su etimología es clara: *zugatz* (árbol) + sufijo *-di* y significa 'arboleda'. Puede verse en el portal una característica de los caseríos del siglo XVIII, las jambas dejan de ser de madera y se construyen en piedra.

# Urresti

## AUZOA



# Auntzesieta Ahozkoa: *Aúntzesta*

*Aunzessieta* abizena 1624an agiri da aurrenekoz. 1692tik aurrera etxearen aipua egiteko, hainbat aldaera erregistrau dira: *Aunzesieta*, *Aunsasieta*, *Aunzezieta*, *Arinsesieta*, *Ansucieta*... Izen honen jatorrian *ahuntz* + *hesi* + *-eta* atzizkia batzen dira. Baserri ederra da. Horma zurietan argi ikusten da jatorrizko egurrezko armazoia: hageak, astalzaldiak...

El apellido *Aunzessieta* se cita en 1624. En referencia al caserío, a partir de 1692, se documentan múltiples variantes: *Aunzesieta*, *Aunsasieta*, *Aunzezieta*, *Arinsesieta*, *Ansucieta*… Se trata de un hermoso caserío en el que destaca en sus paredes blancas el armazón de madera: los postes, la imprenta, los tirantes oblicuos...



# Basaldua Ahozkoa: *Basaldú*

Basaldua abizena zaharra da, XVI. mendearen hasieran dokumentetan da, 1508an hain zuzen be: *Ochoa de Vasaldua*. Aldea-etxeari jagokon lehenengo erreferentzia 1704koa da. Gaur egun bizileku bakarreko etxea da. Portalea, etxearen erdikaldean barik, ezkerraldean dago. Etxearen alde bietara gehigarriak ditu.

El apellido Basaldua es antiguo, se documenta a comienzos del siglo XVI, en 1508: *Ochoa de Basaldua*. La referencia al caserío es muy posterior, de 1704. Hoy en día es una vivienda unifamiliar, con construcciones anejas a ambos lados de la casa.



# Basalduaurrekoa Ahozkoa: *Basalduaurrekó*

1704koa da topau dogun lehenengo aipua: *Basaldúa delantera*. Etxe-moltso hau Laukizko udalerriagaz mugan dagoan lez, lekukoek ez dabez bereizten eta *Basalduk* formea erabilten dabe. Bizimodu biko baserria da. Etxearen aurrekaldean labea dauka.

*Basaldúa delantera* aparece en la fogueración de 1704. Esta agrupación de caseríos se encuentra en la zona lindante con Laukiz, por lo que los informantes los denominan *Basalduk*, refiriéndose a ellos en general sin concretar sus nombres individuales.



# Basalduerdikoa Ahozkoa: *Basalduerdikó*

*Basaldúa erdicoa* Bizkaiko sutegien erroldetako bigarren zerrendan agertzen da, 1745ean. Jatorrizko etxeak lehengo itxurea eta ezaugarriak mantentzen dauz, hegal baten gehigarria daukan arren. Horrez ganera, berari dautsazala, bai albo baten zein atzekaldetik, beste eraikuntza bi daukaz.

La primera mención de *Basaldúa erdicoa* la hemos encontrado en la segunda fogueración, en 1745. El caserío conserva su aspecto original con el tradicional entramado de madera. Actualmente está rodeado de otras dos viviendas anejas a ella.



# Ireta Ahozkoa: *Íreta / Iréta*

1704tik aurrera modu desbardinetan aitatzen da: *Ieta*, *Ireta*, *Yraeta*. Etxe hau Presaburu inguruan dago eta beste etxeetatik nahiko baztertuta. Orain ez da bertan inor bizi eta etxea kondizino txarretan dago. Agirien daukan horman, hondino ikusten da albatearen ganean bedar-sikuak sartzeko erabilten zan atetxua.

A partir de 1704 se recogen distintas variantes para referirse al caserío: *Ieta*, *Ireta* e *Yraeta*. Se ubica en la zona de Presaburu, bastante alejada del resto. Hoy en día está deshabitada y en estado ruinoso.



# Urrestiaurrekoa [Urrestigoikoa] Ahozkoa: *Urrestiaurrekó / Urrestigoikó*

Urrestibekoa baino beranduago agertzen da Urrestigoikoaren aitamena, 1669an: *Juan de Ascorra y de Urresti goicoa*. Hau be, modu bitara ikusi daiteke agirietan: *Urrusti goicoa* 1704an eta *Urresti aurrecoa* 1745ean. Gaur egun, egoera txarrean dago, alde baten kapelea jausita dauka eta sasiak janda dago.

Urrestigoikoa se documenta más tarde que Urrestibekoa, en 1669: *Juan de Ascorra y de Urresti goicoa*. Posteriormente se recogen dos variantes: *Urrusti goicoa* en 1704 y *Urresti aurrecoa* en 1745. Hoy en día se encuentra en ruinas.



## Urrestibekoa Ahozkoa: *Urrestibekó / Urrestiatzekó*



1629an aurkitu dogu lehenengo erreferentzia: *Joan de Basaldua y de Urresti de abajo*. 1704tik aurrera, etxea aitatzeko forma bi erabili izan dira dokumentazinoan: *Urrusti becoa* eta *Urresti Zaguera*. Lekukoek eurek be bietara izentetan dabe: *Urrestibekó* eta *Urrestiatzekó*. Halanda be, gehienek *Urrestik* esaten deutsee biei, bata eta bestea bereiztu barik. 1796ko su erroldetan dinoanez sasoi haretan baserri honek garaia eukan.

Como apellido se registra en el archivo parroquial en 1629: *Joan de Basaldua y de Urresti de abajo*. A partir de 1704 para referirse al caserío se usan dos variantes: *Urrusti becoa* y *Urresti Zaguera*. Según se documenta en la fogueración de 1796, en aquella época el caserío tenía un hórreo.

# Zurbao

AUZOA



## Iruaretxeta Ahozkoa: *Iruátxeta / Iruaritxetá*

Baserri honen lehenengo erreferentzia Bizkaiko sutegi erroldetako 1704ko informazinoan aurkitu dogu: *Iruarecheta*. Hiru elementuk osotzen dabe izena: *hiru* + *haretx* + *-eta* leku-atzizkia. Asko eta asko dira zugatzen izenetatik eratorritako toponimoak. Etxebizitza biko eraikina da. Gaur egun barriztauta dago eta ez dau behinolako baserriaren ezaugarririk erakusten.

La primera referencia la hemos encontrado en la foguera de 1704: *Iruarecheta*. El topónimo se compone de tres elementos: *hiru* (tres) + *haretx* (roble) + sufijo *-eta* (sitio de). Es un caserío de doble vivienda, reformado, que apenas conserva las características de antaño.



## Lobena Ahozkoa: *Lóbene / Lobéne*

Udaleko artxiboan XIX. mendean agertzen da aurrenekoz aldea-etxe honen aitamena, 1838an. Baserri ederra da, eta bizileku bikoa bada be, antzeko itxurea mantentzen da alde bietan. Euretako bat konponduta dago, baina jatorrizko eraikinaren bereizgarriak ditu agirian: teilatua ur bitara, hormak urtenago etxearen aurrekaldean, portalea erdikaldean, egurrezko armazoia lehenengo pisuan, eta zurezko besoak teilatu-hegalari eusteko.

En el archivo municipal aparece en documentación del siglo XIX, en 1838. En un hermoso caserío bifamiliar que mantiene un aspecto similar en ambas viviendas. Conserva las características típicas de esta zona: cubierta a dos aguas, espolones laterales, portal central, armazón de madera...



## Olabarri Ahozkoa: *Olábarri*

1698 urtekoa da Olabarri etxearen lehendabiziko aipua. Izenaren etimologia garbia da: *ola* izena + *barri* adjektiboa. Ola izena erreka ondoan burdinea sortzeko eta lantzeko egoten ziran eraikuntza bereziak izentetako erabili izan da. Gaur egun barriztauta dago eta hormak porlanez estalduta daukaz.

La primera mención del caserío Olabarri es de 1698. la etimología del topónimo es clara: el sustantivo *ola* (ferrería) + el adjetivo *barri* (nuevo). El término *ola* se ha utilizado para designar los talleres donde se extraía el hierro del mineral y se convertía en metal.



## Tozinaga Ahozkoa: *Tosiñerá*

*Tocinaga* errotea 1686an dokumentetan da lehenengoz eta handik gora forma bera mantendu izan dau idatziz. Ahoz, ostera, *Tosiñerá* esaten jako. Laukizko mugeari joten dago eta bertara joateko be, Laukizko bidetik sartu behar da. Etxea gaur egun abandonauta dago. Aurreko hormea konpontzen hasi zirala dirudi, baina barriztatze-lanak bertan behera itxi ziran.

El molino *Tocinaga* se menciona por primera vez en 1686 y desde entonces el topónimo se ha mantenido invariable. Oralmente le dicen *Tosiñerá*. Está ubicado en el límite entre Gatika y Laukiz. Hoy en día está abandonado.



## Txanbelinena Ahozkoa: *Txánbeliñe*

Gaur egun gatikarrek baserri hau izentetako erabilten daben formea ez da dokumentazinoan agertzen. Seguruenik gerora jarritako izena izango da. *Txanbelin* (*lindo -da*) ezizenaz eregitako etxe-izena da. Lekuko batzuen esanetan *Aurrekoa* be baderitxo. Etxe galanta da baten. Inguru honetako XIX. mendearen hasierako etxeen eredu argia.

*Txánbeliñe* es la forma que los vecinos de Gatika utilizan para referirse a este caserío. Debe tratarse de un nombre bastante reciente ya que no aparece en la documentación. Algunos informantes recuerdan que también le llamaban *Aurrekoa*. Es un ejemplo claro de los caseríos de comienzos del siglo XIX.



## Zurbao [Lobena] Ahozkoa: *Lobene*

*Çurbano* abizena 1617an dokumentetan da Gatikako eleiz artxiboan. Etxeari jagokonez, 1704tik aurrera, idazkietan *Zurbano Echenausia* eta *Zurbano la mayor* agiri dira. Hauxe da auzunetxuko bihotza eta honen arabera hartzen dabe garaitiko etxeek euren izena. Gaur egun etxearen eskrituretan Lobene-nagusi izena agertzen da eta horixe da herritarrek erabilten dabena.

*Çurbano* es un apellido que se registra en 1617. En cuanto al caserío, a partir de 1704 se recogen las variantes *Zurbano Echenausia* y *Zurbano la mayor*. Este caserío es el centro de esta barriada y el resto de las viviendas toman el nombre en función de la localización que tienen respecto de aquel. Hoy en día en las escrituras aparece como Lobene-nagusi y oralmente le dicen *Lobéne*.



## Zurbaoaurrekoetxea [Aurrekoetxea] Ahozkoa: *Aurrekotzé*

*Zurbanoaurre* abizena 1628ko bateo erregistroetan agertzen da: *Maria de Çurbano aurre*. Etxeari jagokonez 1704an topau dogu lehenengo aitamena, *Aurrecoechea*; eta 1796ko zerrendetan forma osoa jasotzen da, *Zurbano aurrecoechea*. Gaur egun konponketa lanetan dago.

*Zurbanoaurre* aparece en los registros bautismales de 1628: *Maria de Çurbano aurre*. En cuanto al caserío la primera mención es de 1704, *Aurrecoechea*. En 1796, en cambio, se documenta con la forma completa, *Zurbano aurrecoechea*. Hoy en día está en proceso de renovación.



## Zurbaobeaskoetxea [Beaskoetxea] Ahozkoa: *Beskotzé*

1707an agertzen da lehenengoz abizena: *Manuel de Zurvano beascoechea*. Bizkaiko su erroldetan 1704ko zerrendetan agiri da, *Beazcoechea*; 1796koan, ostera, deitura osoa dago, *Zurbano beascoechea*. Etxea barriztauta dago, baina behekaldeko hormetan eta horma-kantoietan harria mantentzen dau.

El apellido y el caserío se documentan prácticamente a la vez, en 1707 el primero, *Manuel de Zurvano beascoechea*; y en 1704 el segundo, *Beazcoechea*. Al igual que sucede con sus caseríos vecinos, en la fogueración de 1796 aparece como *Zurbano beascoechea*.



## Zurbaogoikoetxea [Goikoetxea] Ahozkoa: *Goikotzé*

Izenak berak dinoan moduan, auzunetxu honetan gorengo dagoan etxea da. 1684an dokumentetan da lehenengoz: *Zurbano goicoechea*. Harrezkero *Goicoechea* formea be agertzen da. Horixe da ahoz erabilten dabena, lehenengo elementua galduta. Gaur egun barriztauta dago.

Tal y como su propio nombre indica, *Zurbaogoikoetxea* se sitúa en la zona más alta de este núcleo. Se documenta en 1684 como *Zurbano goicoechea*. Oralmente no se utiliza el primer elemento del topónimo y le dicen simplemente *Goikotzé*.



# Baserrien zerrenda

## Butroe



## Garai



## Gorordo



## Igartua



## Libaroa



## Sertutxa



## Ugarte



## Urresti



## Zurbao

# ALKARRIZKETATUTAKO LEKUKOAK
## INFORMANTES

Laurentzi Aginaga
Jose Antonio Agirre
Amparo Alberdi
Andoni Arruza
Prudencio Asua
Zacarias Asua
Mª Jesus Bilbao
Jose Etxebarria
Jesus Gaueka
Ines Mardaras
Pilar Oleagoitia
Eulogio Zurbanobeaskoetxea

Gure eskerrik zintzoena guztioi zuen laguntzagaitik. Eskerrak Jesus Zugazagari be, eskuratu deuskun informazinoagaitik.

Nuestro agradecimiento más sincero por vuestra colaboración. También queremos agradecer la documentación aportada por Jesus Zugazaga.



## KREDITUAK / CRÉDITOS

Artxibo-lana / Investigación documental: Ziortza Artabe
Alkarrizketak eta grabazinoak / Entrevistas y grabaciones: Akaitze Kamiruaga
Informazinoaren sailkapena / Clasificación de la información: Itziar Rotaetxe
Testuak / Textos: Akaitze Kamiruaga
Argazkiak / Fotografías: Akaitze Kamiruaga
Diseinua eta maketazinoa / Diseño y maquetación: Idoia Tolosa

